1. Gaia. Administrazio Zuzenbidea.
I. Zer da Administrazio Zuzenbidea?
II. Administrazio zuzenbidearen funtsa.
III. Administrazio zuzenbidearen sorrera eta garapena.
IV. Administrazioa Espainiar Konstituzioan (EK).

I. Zer da Administrazio Zuzenbidea?
Administrazio zuzenbidea definitzeko era errazena Administrazio zuzenbidea *Administrazio publikoen berezko Zuzenbidea* dela esatea da. Definizio hau zuzena da, baina berorri hainbat ñabardura egin behar zaizkio.

Administrazio zuzenbidea Administrazioa objektutzat daukan araudia da, administrazioaren antolakuntza, funtzionamendua, administrazioak beste subjektu batzuekin, publiko zein pribatuekin, dituen harremanak eta administrazioaren jarduera kontrolatzeko bideak edo tresnak arautzen dituena. Araudia hau, Administrazio Zuzenbidea, berezkoa dela esaten dugu, izan ere, arau eta printzipio propioez osatzen da, zuzenbide zibila edo penala osatzen duten arau eta printzipioengandik ezberdinak direnak. Zentzu honetan, Zuzenbidea zentzu orokor batean aztertuko bagenu, esango litzateke Administrazio Zuzenbidea zuzenbidearen adar propio bat dela, beste adarren antzera: Zuzenbide Zibila, Merkatal Zuzenbidea, Lan Zuzenbidea (Zuzenbide Pribatu gisa), Zuzenbide Penala, Konstituzio Zuzenbidea, Zuzenbide Prozesala eta Administrazio Zuzenbidea (Zuzenbide Publiko gisa).

Baina zerk bereizten du Administrazio Zuzenbidea?
Administrazio Zuzenbidea administrazioari aplikatzen zaion araudia dela esanez, beharrezkoa izango da Administrazioa zer den azaltzea. Administrazioa definitzea ez da batere erraza, oso antolakuntza konplexua da eta. konplexutasunak alde batera utzita, Administrazioa, botere exekutiboa osatzen duen eta nortasun juridiko propioa daukan antolakuntza publiko gisa definitu genezake. Batetik, Administrazio bakoitzak bere nortasun juridiko propioa dauka, harreman juridikoetan parte hartu ahal izateko. Bestetik, Administrazioa antolakuntza publikoa da, botere publiko bat osatzen du, exekutiboa, hain zuzen. Ezaguna denez, botere banaketak "botere legegile", "botere judizial" eta "botere exekutiboaren" artean bereizten du. Era sinpleenean esanda, lehenengoak legeak onartuko ditu, bigarrenak legea betetzen dela kontrolatuko du, eta hirugarrenak legea exekutatuko du, legeak diona errealitatera eramanez. Administrazioak, botere exekutibo hori osatuko luke. Botere exekutibo hori da, hain zuzen, botere publiko hedatu eta konplexuena, baliabide gehien, bai ekonomikoak eta baita pertsonalak ere, kontsumitzen dituena, eta herritarrekin era zuzenenean harremanak izaten dituena. Administrazioa, beraz, botere exekutiboa da.

Administrazio Zuzenbidea, beraz, Administrazio honen jarduera, antolakuntza, beste subjektuekin dituen harremanak eta kontrola arautzen dituen zuzenbidearen adarra da. Printzipio honek nahiko erraza ematen duen arren, kontuan izan behar da praktikan eskema hau konplikatu egiten dela. Batetik, kontuan izan behar da administrazioari kasu batzuetan zuzenbide pribatua aplikatzen zaiola: adib. administrazioarentzat lan egiten duten askok lan kontratuak dituzte, funtzionarioak izan barik, edo administrazioak kontratu pribatuak gauzatzen ditu askotan (alokairuak, salerosketak, etab.) Bestetik, kontuan izan behar da askotan administrazioak bere funtzioak ez dituela bere kaxa aurrera eramaten, baizik eta administrazioak izaera pribatua daukaten subjektuak

sortzen dituela funtzio horiek aurrera eramateko: enpresa publikoak edo fundazioak, adib., administrazioak nolabait kontrolatzen dituenak, baina zuzenbide pribatuaren menean daudenak. Enpresa publiko hauek, hein handi batean diru publikoaz osatzen direnak, hasiera batean, jarduera ekonomiko zehatzak gauzatzen zituzten, beste edozein enpresak bezala (pentsa lehen Telefonika zena, orain enpresa pribatua dena), baina orain, gero eta gehiago, administrazioak enpresa publiko hauek sortzen ditu, ez jarduera hertsiki ekonomikoak gauzatzeko, baizik eta funtzio guztiz publikoak aurrera eramateko (nazioarteko kooperazioa, osasun zerbitzuak, etab.). Beste batzuetan administrazioak enpresa bat sortu beharrean funtzio bat aurrera eramateko, subjektu pribatu bat kontratatzen du funtzio hori aurrera eramateko. Fenomeno hauek, batzuetan administrazioari zuzenbide pribatua aplikatzeak eta administrazioak gero eta gehiagotan funtzio publikoak betetzeko izaera pribatuko figurak sortzea edo kontratatzeak, administrazioak gero eta gehiago Administrazio Zuzenbidetik ihes egiten duelako ideia azpimarratzera eramaten gaitu: gero eta gehiago aplikatzen zaio administrazioari Zuzenbide pribatua, honek dituen ondorioekin. Hirugarrenik, posible da, baita ere, Administrazio Zuzenbidea administrazioa ez diren beste subjektu batzuei aplikatzea (adibidez, Herritarren Defendatzailea, Kontu Auzitegia, Gorte Orokorrak, Botere Judizialaren Kontseilu Orokorra, etab. ez dira, berez, administrazioa, baina batzuetan administrazio zuzenbidea aplikatzen da, beraien zuzenbide propioa ez daukatenean, adib. kontratuetan, ). Aipatu hiru egitate hauek zaildu egiten dute praktikan Administrazio Zuzenbideari buruz emandako definizio zehatz eta praktiko bat eraikitzea.

Aurrean aipatutakoa kontuan hartuz, administrazio zuzenbideaz hertsiki hitz egitean, administrazioak administrazio jarduerak aurrera eramaten dituenean aplikatzen den zuzenbideaz ari gara. Hau da, ikusi da administrazioari batzuetan zuzenbide pribatua aplikatzen zaiola. Beraz, administrazio zuzenbidea administrazioari aplikatzen zaion zuzenbidea dela esatea ez da guztiz zuzena. Zuzenena, administrazioari administrazio jarduerak gauzatzen dituenean aplikatzen zaion zuzenbidea esatea da.

Administrazioa zer den definitzea oraindik ere gehiago zailtzen da kontuan hartzen bada administrazioaren izaera konplexua eta administrazioak jarduera ezberdinak gauzatzen dituela.

Batetik, kontuan izan behar da, "Administrazioaz" hitz egiten badugu ere, bakarra izango bailitz, administrazio ezberdinek osatzen dutela botere exekutiboa. Aurrerago ikusiko dugunez, administrazio ezberdinak aurki ditzakegu, bakoitza bere nortasun juridiko propioarekin, bere pertsonalarekin, bere eskumen eta ahalmenekin... Administrazio ezberdinez hitz egin dezakegu: Erkidego Autonomoa, Estatua, EITB, Osakidetza, Bilboko Udala, etab.
Kontuan izan behar da, baita ere, Administrazio bakoitza organo ezberdinez osatzen dela. Hau da, administrazio bakoitzaren barne antolakuntza bera ere konplexua da, organo edo unitate ezberdinez osatzen delako, organo bakoitzak bere ahalmenak eta funtzioak izango dituelarik: Unibertsitatean, adib., Errektorea, Gobernu Kontseilua, Sail bakoitza, etab.

Bigarrenik, kontuan izan behar da Administrazioak jarduera ugari gauzatzen duela. Nolabait gizartean oso era ezberdinetan eragiten du. Ez ditu, legegileak bezala, bakarrik arauak onartzen, nahiz eta administrazioak ere arauak onartu ditzakeen. Ez du, ezta ere, bere jarduera gatazka juridikoak konpontzera mugatzen, botere judizialarekin gertatzen